# ONGIĪEAREN SARIYA





GARITAONANDIA'tař BITOŘ

# Ongilearen sariya

GARITAONANDIA'tar BITOR apaizak

IDATZITAKO

## BI ATAL'DUN ANTZERKIA

(*Edespen baten gogariz.*)





1922
ENEKO DEUNA'REN IRARKOLA. — GARIBAI, 28
DONOSTIA

*ZATARAIN'dar AMBORTSI*
*euskaltzale askor ta gogatsuari,*
*maitasun-agerkaiz,*
*eskeintzen diyo idazti au*
*EGILEAK*

# BANAKETA

## ANTZEZNOTIÑAK

INES
JOXEPA
KARMELE
IXIDOŔ
IMANOL (Ines'en aita).
APAIZ-JAUNA
SENDAGIL̃EA
EŔAMUN (Ixidoŕ'en aita).
MOŔOIA

# LENENGO ATALA

AGERTOKIAN. — *Gela-nagusi edeŕ egoki bat; atzean ta bi aldetan ateak: Egil̄earen ezkeŕ-aldeko atea izango da Imanol'en lo-gelakoa.*

## LENENGO AGEŔALDIA

**Ines ta Joxepa.**

INES — *(Etxerako janzki apaiñaz; exerita, nekatuta bezela.)* ¡Ai au lana!

JOXEPA — Ez dezu bañan oŕenbesterano estutu beaŕ: ¡Geyegi egiten dezu!

INES — Ez dago geyegirik. Aita da, eta bere osasun-alde al-detan guzia egitera beaŕtua nago.

JOXEPA — Bai... oŕela da: bañan, berenganako aŕdurak zerori gaixotu beaŕ zaitu.

INES — Poz-pozik aŕtuko nituzke gaixotasunak, nere aitatxo sendatzeaŕen.

JOXEPA — Sinisten det. ¡Aingerutxo bat zera zu!

INES — Ez dago aingeru izan beaŕik. Alaba izatea naikoa da, nere gogo ta al guziak aitaren alde jaŕtzeko.

JOXEPA — ¡Gaxoa!

INES — ¡Gaxoa, bai, gaxoa! Egunetik-egunera indaŕgetzen ari da, ta ez dakit nola aterako dan eritasun onetatik.

JOXEPA — ¿Noŕk daki? Sendagil̄ea laisteŕ etoŕiko da, ta esango digu zeŕ deizkion.

INES — Sendagil̄eak esan beaŕik ez det. *(Zintzaŕi deya.)*

JOXEPA — Bera ote da? *(Joaten da atea irikitzera.)*

INES — Il̄un ta atsekabez aŕkitzen da gauŕ nere aita!... Zerbaitek aŕduratzen du!... ¿Zeŕ ote da?... Ez da ba izango nere eŕuz!

JOXEPA — *(Atetik.)* Ixidoŕ jauna, ta bere izeba.

INES — Saŕtu ditezela. *(Jeikitzen da.)*

## BIGAŔEN AGEŔALDIA

**Lengoak, Kaŕmele ta Ixidoŕ.**

KAŔMELE (*Atetik.*) ¿Bada baimenik?

INES Auŕera. (*Joaten da Joxepa.*)

KAR.-IXID. Aŕatsalde on.

INES Baita zueri ere.

IXIDOŔ ¿Zeŕ diozu nere amesgai maiten oŕek? (*Laztanki ta maitekoŕ.*)

INES Ondo, ¿ta zu?

IXIDOŔ Txit ondo.

INES Alaitzen naiz.

IXIDOŔ (*Kaŕmele auŕkeztuz.*) Nere izeba.....

INES Atsegin zait ezagutzea.

KAŔMELE Eskeŕik asko. Saŕitan itz egin degu zutaz, bañan, gauŕ aŕte ez det izan zu ikusteko zoririk.

INES Ez da eŕez ni etxetik kanpora ikustea; bada aspaldi ontan ez naiz ateratzen eleizara baizik.

IXIDOŔ Bai: neke asko daramazu aldi ontan, gaxu oŕek.

INES Ta... onela geranian, pozik.

IXIDOŔ Ta, ¿nola aŕkitzen da aita?

INES Exeri zaitezte. (*Exertzen dira.*) Ba, aita gaxoa... gaizki aŕkitzen da.

KAŔMELE ¿Ain gaizki?

INES Bai anderea. Jeikitzen da, bañan geroago ta indaŕ gutxiago du.

IXIDOR Aŕisko aundikoa da, izan, biotzeko miña, bañan geldiro-geldiro gogoŕtuko da.

INES Obe litzake. Ta zuk; ¿ba-aldezu aitaren beŕi?

IXIDOŔ Gauŕ goizean aŕtu det idazki bat.

INES Ta ¿zeŕ dio?

IXIDOŔ Atsegiñez irakuŕi dituala izebak bialdu dizkion zutazko beŕiak, ta oŕela izanik ez degula eragozpenik izango.

INES Alaitzen naiz; ta (*Kaŕmele'ri*) zuri eskeŕak.

KAŔMELE Ez dezu eskeŕik eman beaŕik. Agirian daude zure ontasun ta izakera goragaŕiyak.

IXIDOŔ Bere aŕpegiari begiratzea baño besterik ez dago.

INES Zuk esateko ez da asko (*Iŕi-paŕez.*)

| | |
|---|---|
| IXIDOŔ | Ez da asko, ez: nere mingañak esan ditezken onespen guziak... uŕi gelditzen dira zure izakeraren auŕean. |
| INES | Loretegiren batetik zatoz, noski. |
| IXIDOŔ | Bai, ta lore gabe etoŕi beaŕ; zuri egokitzen zaizun likurtadunik aŕkitu ez detalako. |
| INES | Lotsatu beaŕ nazu, Ixidoŕ. |
| IXIDOŔ | (*Kaŕmeleri.*) ¿Ez al da egiya, izeba? |
| KAŔMELE | Bai; ala da: ta zuen alkaŕganako maitasunak asko postutzen nau. |
| INES | Eskaŕikasko. Ta (*Ixidoŕ'i*) ¿laisteŕ biuŕtuko al-da aita? |
| IXIDOŔ | Nik uste det iĺebete baño len etoŕiko dala. Sei iĺebete dira etxetik atera zala, ta orain zoŕtzi egun eldu zan Amerika'tik Londres'era. |
| INES | Badet ezagutzeko gogua; bañan, bilduŕ naiz nere aita ezagutzeko astirik izango ez ote duen. |
| KAŔMELE | ¿Zeŕ bada? |
| INES | Gaizki aŕkitzen da, ainbeste egunetan bizi izateko. |
| IXIDOŔ | ¡Ixilik zaude! |
| INES | Bera ere bilduŕ da: bada, beti ari da esaten, bera il baño len ezkondu beaŕ nukela, umezuŕtz eta bakaŕik geldïtu ez nadin. |
| IXIDOŔ | Ba, oŕetaz ez du zure aitak buru-autsi beaŕik. Zu etzera iñolakoz bakaŕik geldituko. |
| INES | Eskeŕik asko. |
| IXIDOŔ | ¡Esatea ere! |
| KAŔMELE | Jakiña da, Ines: Gu eŕi ontan aŕkitzen geran aŕtean etzera laguntza gabe geldituko; ta emendik auŕera, etxea aŕtu degun ezkero, emen izango gera geyenean. |
| INES | Eskaŕtzen zaituztet. |
| JOXEPA | (*Atea irikiz.*) Sendagiĺe jauna. |
| INES | (*Kaŕmele ta Ixidoŕ'i.*) Azketsi: (*Jeikitzen da.*) |

## IRUGAŔEN AGEŔALDIA

### Lengoak eta Sendagiĺea.

| | |
|---|---|
| SENDAGIĹEA | (*Saŕtzen da, Joxepak atea irikiz.*) Aŕatsalde on. |
| KARM.-IXID. | Aŕatsalde on. (*Jeikitzen dira.*) |

INES (*Sendagil̃eari.*) Baita zuri ere.

SENDAGIL̃EA ¿Da; zeŕ dio aitak?

INES Nere ustez, beŕdiñ xamaŕ,

SENDAGIL̃EA Ikusi zagun. (*Kaŕmele ta Ixidoŕ'i.*) Zuen baimenaz.

IXIDOŔ Zuregan dezu.

INES (*Kaŕmele ta Ixidoŕ'i.*) Bereala naiz zuekin.

KAŔMELE Ongi da. (*Joaten dira Sendagil̃ea ta. Ines.*)

IXIDOŔ ¿Zeŕ deizkiozu?

KAŔMELE Andere egoki ta itxurazkoa benetan.

IXIDOŔ ¡Oŕela uste det!

KAŔMELE Gañera, alaba bakaŕa; ta bere dirutza ta ondasunak ez dira atzean uztekoak izango.

IXIDOŔ (*Ajola eman gabe.*) Poliki izan beaŕ du; bañan ori...

KAŔMELE ¡Ze poliki!... Asko, diotenez.

IXIDOŔ Batere izan ez ta ere, naikoa ondasun da bera.

KAŔMELE ¡Oŕaitiokan!

IXIDOŔ Bai, bai:... nere alde... (*Itzultzen da Ines.*)

INES Azketsi.

IXIDOŔ ¿Nola aŕkitzen da?

INES Gutxi gora-bera beŕdiñ.

KAŔMELE Banuan ezagutzeko gogua, bañan, ¿ez da orain izango berarekin itz egiteko garai egokia?

INES Ez, anderea: ta..... azketsi, bada sendagil̃earen agindua da.

KAŔMELE Ongi da: Beaŕ deguna, lenbailen sendatzea da.

INES ¡Jaungoikoak nai dezala!

IXIDOŔ Zuk sendagil̃eakin egon beaŕa izango dezu, ta ez det eragozpenik jaŕtzerik nai. Bitaŕtean, zeregintxo bat betetzera noa ta... gero itzuliko naiz. (*Jeikitzen dira.*)

INES Nai dezutenean.

KAŔMELE Atsegin zait ezagutzea, ta agindu uste-onez.

INES Berdin diotzut. Zuen agindupean naukazute.

KAŔMELE Eskeŕik asko.

IXIDOŔ Geroarte, Ines; ta ya, itzultzean, aita obeto aŕkitzen detan.

INES Jainkoak nai dezala.

KAŔMELE Aguŕ.

INES — Zoazte ongi. (*Joaten dira Karmele ta Ixidoŕ.*) Mutil egoki ta eratsua da benetan Ixidoŕ. (*Ixil-aldia, oldozkoŕ*)... ¡Nola aŕkitu ote du aita sendagileak! (*Joaten da gela-aldera, baña saŕtu baño len ageŕtzen da Sendagilea.*) ¿Zeŕ deizkiozu?

SENDAGILEA — Ez du aldaketarik egiten. Biozkadak beŕdin aŕkitzen dira, ta aŕiskotik ez da ateratzen. Kontuz ibili beaŕ dezute igitzen danean, batez ere jeikitzean.

INES — ¿Eta ongi aŕkituko al-da jeikita?

SENDAGILEA — Bai, bai, Exeri-toki bigun ta eroso baten jaŕi ezkero, obeki aŕkituko da, eta lasayago aŕtuko du aŕnasa.

INES — ¡Sendatuko ote da!

SENDAGILEA — Ori... ez da eŕez izango: bada biots oŕek ez du indaŕik; ta... geyegi indaŕkatu, edo atsekaberen bat aŕtuz, beŕ-beŕtan gelditzeko aŕiskuan aŕkitzen da.

INES — ¡Gaxua!

SENDAGILEA — Bai, Ines, Sendagileok egia esatera beaŕtuak gaude, gauza guziak beaŕ dan bezela eratutzeko.

INES — Ulerŕtzen det zeŕ esan nai dezun.

SEDDAGILEA — Bai: ta egoki izango da, jeiki ta gero, berarekin batean aŕkitzen zeranean, zeŕbait esatea.

INES — Bai jauna, bai: ez nuke nai nere eŕuz, egin-beaŕ ori bete gabe uzterik.

SENDAGILEA — Ondo egingo dezu. Ta orain banoa. Ilunabaŕean itzuliko naiz, baña etoŕi beaŕa balitz, deitu, nai dezunean.

INES — Eskeŕik asko.

SENDAGILEA — Geroaŕte.

INES — Zoaz ondo. (*Badijoa sendagilea.*)

INES — (*Bakaŕik: oldozkoŕ, exerita.*) ¡Aita gaxoa!..... Gaizki aŕkitu izango du sendagileak!... ¿Esango ote diot?... ¡Atsekaberik aŕtuko ote du ori esanez!... ¡Au lana!... ¡Atsekabea izango dala beretzat kaltegaŕiena! ta ¿nola esango diot nik aitoŕtzea egoki izango zayola..... atsekaberik eman gabe?... Ez da eŕez!..... bada, ori esanez, gaizkiago aŕkitzen dala irudituko zayo. Bañan esan

egin beafko!..... Bere *anima* da lenbizi..... ta ez nuke nai nere efuz gaiztokian betiko galdurik... miñez ta oñazez nere aitatxoren gogoa afkitzerik!... Ez Jauna, ez:... nere aita'ren betiko zorionofdez, poz pozik... biotz-biotzez eskeintzen dizut nere bizitza; ta Zugan nere ustea jafiz, banoa nere egin-beafa betetzera... ¡Nola esango ote diot!...

## LAUGAŔEN AGEŔALDIA

**Ines, Imanol ta Mofoia.**

MOŔOIA — (*Gelako atetik.*) Ines.

INES — (*Izuturik.*) ¿Zef da?

MOŔOIA — Zuk laguntzea nai du aitak.

INES — (*Gelara dijoala.*) Bai, aitatxo, bai; atoz... (*Ines ta Mofoia saftzen dira gelara, ta bereala ageftzen dira, Imanol bien aftean'dakaftela.*)

IMANOL — (*Indaf gutxi du, ta nekez ibiltzen da.*) ¡Au lana!... Ez det indafik!...

INES — Orain... ofdutxo betean jeikita egonez, atsedenduko zera.

IMANOL — Exeri nazazute poliki. (*Jaftzen dute exeritoki egoki batean.*) (*Mofoia ate nagusitik dijoa, eta gelditzen dira Imanol ta Ines alkafen ondoan exerita.*)

INES — ¿Ongi afkitzen zera ofela?

IMANOL — Ez da efez ni ongi afkitzea... Nereak egin du!...

INES — Ez, aitatxo!... Poliki-poliki sendatuko zera.

IMANOL — Sendatu!... ¡ez!...

INES — Ba... sendatzeko usterik ez badezu..... ¿ez deritzatzu ongi..... garaiz gogoratzea...?

IMANOL — Zef, alaba, zef?

INES — Ba... garaiz... gauzak beaf dan bezela... eraz jaftzea.

IMANOL — ¿Zef gauza?...

INES — Ba... badakizu... bada-ezpada...

IMANOL — ¡A!... uleftzen zaitut!... Ez det esan beafik... mundu ontan utziko ditudan gauza guziak, zureak izango dira.

INES — Bañan.... aitatxo!..... badira mundu ontan utziko ez dituzunak ere: zurekin batean eramango dituzunak; eta... ori ere, ondo litzake eratultzea.

IMANOL — ¿Zeř... alaba... zeř?

INES — Aitořtu, aitatxo!

IMANOL — ¡A!... Ez, Ines, ez! (*Tamal.*)

INES — (*Biotzez.*) ¿Zeřgatik ez, aita?

IMANOL — Ez det nai... ez det nai... Naste aundia ařkitzen da nere buruan.

INES — Naste guziak, aundienak izan da ere, bereala eraztutzen dira, gogo-onez ařtu ezkero.

IMANOL — Ez... ez det nai... zu gaizki uzterik.

INES — ¡Ni gaizki utzi?

IMANOL — Bai... gaizki, ezkondu gabe.....

INES — Baliteke laisteř eskontzea ere: bada Ixidoř bere aldetik geřtu dago.

IMANOL — Ni... il baño len... bestela, ez dakit...

INES — Dana-dala, etzait ajola ezeřgatik ere, zure *anima* zeruratzen badet. Ori da bakakař-bakařik bizitzako egipidez lořtu beař deguna. Beste geřtakizun guziak utsak dira.

IMANOL — (*Laztantazunez.*) ¡Alaba gaxoa!... Umezuřtz.. bakařik...

INES — ¡Aitatxo!... Mundu ontako biziera, ez da egiazko bizitza; bizitzako bidea baizik. Bide au, zabala naiz estua, leguna naiz latza izan... beřdin da: beař deguna da, goiko bizitzara, egiazko bizitzara eldu, eta betiko atsedena iritxi.

IMANOL — ¡Itz edeř ta poskařiak!. Bañan... berandu da...

INES — Ez dago berandurik: aldi guziak dira egokiak.

IMANOL — ¡Alaba!

INES — ¿Zeř aita?

IMANOL — Jakin zazu, ez dala nere eřuz egokera ontan ařkitzea... Zintzoak izan dira nere egikerak... bañan... adizkide gezuřti ta... lagun doloř batzuek galdu naute. (*Ines'ek itz auek entzutean erakutsiko du bere ařimena, bañan Imanol'ek ořtu gabe.*)

INES — (*Izutuz.*) (¡Zeř dio!) (*Indařketuaz.*) Ba... aita; lagun oyek galdu bazaituzte ere; ez zaitzala beñepin galdu deabruak. ¡Zeruratu zazu zure *anima!*

IMANOL — Bai..... (*Negar̃-malkotan.*) Bai..... nere alabatxo maitea.

INES — Nik omenduko zaitut, aita!

IMANOL — Bai... bai...

INES — ¿Deituko al-diot bada apaiz jauna'ri?

IMANOL — Nai dezun guzia...

INES — ¡Ze poza! ¡Ze atsegiña ematen didazun, aita!

IMANOL — ¡Gaxoa!

INES — Banoa bada, zure baimenaz..... Bereala itzuliko naiz.

IMANOL — Bai: ta, datoṙela moṙoya bitaṙtean.

INES — Ongi da..... (*Abiatuz.*) ¡Eskeṙak Jaunari!..... (*Badijoa.*)

IMANOL — (*Bakaṙik.*) ¡Alaba gaxoa! Ez daki zeṙ datoṙkion ni il-ondoren!... Orain aṙte... ¡nai zuen guzia!... auṙerakoan, ¡ezeṙ-eza!... (*Tamal.*) ¡Gaxoa!...

MOṘOIA — (*Atetik.*) Bada baimenik?

IMANOL — Bai... auṙera. Atoṙ onera... Gaizki natxiok.

MOṘOIA — ¿Nai aldu ba gelara eramatia?

IMANOL — Bai... obe izango dek. Alde guzietan bereala nekatzen nauk.

MOṘOIA — Ba, orain beste alditxo bat gelan igaroko du: gero oeratu; ta oṙela, txandaka.

IMANOL — Bai: zeṙbait asmatu beaṙko.

MOṘOIA — Tira ba (*Laguntzen dio poliki jeikitzen*).

IMANOL — Kontuz!... Etzeukat ezeṙtarako indaṙik.

MOṘOIA — Eldu ondo neri... (*Badijoaz.*)

IMANOL — Biotz au... makal zebil̃ek.

MOṘOIA — Indaṙtuko da geroago.

IMANOL — .....¡Ai..... (*Saṙtzen dira gelara.*)

## BOSKAṘEN AGEṘALDIA

**Ines bakaṙik; gero Joxepa, Apaiz Jauna ta Moṙoia.**

INES — (*Saṙtuaz.*) Bereala etoṙiko da. (*Aita ez ikusiz.*) ¡Oi! ez dago emen. Oeratzeko joango zan... Obe. (*Exeritzen da oldozkoṙ*)... ¡Ze eragozpen ote du aitak, lenengotik aitoṙtzera ez jaṙtzeko!..... Korapil̃o gogoṙen batek lotuta dauka bere biotza noski!..... ¡Ez duela nai ni gaizki aṙkitzerik!.....

Bañan ¿zeŕ dala ta? ¿Bere ondasuntzaz ote da? ¡Ai Jauna!... Dana dala: Nere aitari egin zaizkiyoten gaiztakeriak nik oŕdaindu beaŕa badet ere, geŕtu nago: betoz neke ta miñak, nere aitaren zorion-alde, ta bere eŕu ta uts-egiñen oŕdaiñez badira!... (*Ixilik*)... Bai... ¡Zeŕ izango ote da nitzaz!... ¡Aita gabe, bakaŕdadean!... (*Kemenez.*) Ta ¿zeŕ?... Jaunak ez nau utziko... Zeruko Ama nerekin izango da!

JOXEPA (*Saŕtuaz.*) Apaiz jauna etoŕi da.

INES Datoŕela auŕera. (*Jeikitzen da.*)

APAIZA (*Joxepak irikitzen dio atea.*) Aŕatsalde on.

INES Ongi etoŕi.

APAIZA ¿Zeŕ degu, Ines?

INES Badaki... Aita, sendagiĺeak esan ditanez, aŕiskuan aŕkitzen da;... eta bada-ezpada, ondo etoŕiko zayo geŕturik aŕkitzea.

APAIZA Bai, ala da. Egin-beaŕak garaiz bete-beaŕ dira ta ez utzi gerorako.

INES Batez ere, nere aita bezela aŕkitu ezkero: bada ustegabeko aldaŕte-gaizto bat etoŕi litzakioke.

APAIZA Bai, eriotzaren iragaŕirik ez du iñoŕk auŕez izaten. Esan oi dan bezela, lapuŕa leyotik bezela eriotza ere ixil-ixilik datoŕkigu; eta usterik gutxien degunean, ezaŕtzen digu bere eŕpe zoŕotza, ta igitatzen dizkigu... irudiz iraunkoŕ diran bizitzak.

INES Guazen bada, jauna. (*Gelara.*)

APAIZA Nai dezuna.

INES (*Gelako atea irikiaz.*) Ara emen apaiz jauna, aita, (*Saŕtzen da.*)

IMANOL (*Baŕendik, ixilkiro.*) Auŕera.

APAIZA (*Saŕtuaz.*) Aŕatsalde on. (*Ateratzen da Moŕoia.*)

MOŔOIA (*Bakaŕik.*) Gaizki aŕkitzen da nere nagusia: ta nere ustez, ez du luzaroko bizirik... ¡Alaba gaxoa!... ¡Eŕuki det!.. Bada... geldituko da umezuŕtz, eta nik ez dakit nola antolatuko dan... Diru asko izango du, bañan, ¿zeŕ egiteko emakume bakaŕak?... Gizon leyal ta zintzo bat beaŕ luke

| | |
|---|---|
| | ořek, bere ondasun ta diruak beař dan bezela zuzen arautzeko:... ta ořetarako... ez dago zeř esanik... |
| INES | (*Gelatik ateriaz.*) ¡Jaungoikoak entzungo al-digu. |
| MOŘOIA | Bai andřea. ¡Zu bezelako aingeru bati entzungo ez dio bada! |
| INES | Aingeruak zeruan daude. |
| MOŘOIA | Baita munduan ere: zu bat. |
| INES | ¿Zeř deizkiozu aitari? (*Exeriaz.*) |
| MOŘOIA | Makaltxo ařkitzen da: bañan poliki ta ařduraz zaindu ezkero, zuk zainduko dezun bezela, sendatu liteke. |
| INES | ¿Uste dezu? |
| MOŘOIA | Nere ama beřdin-beřdin ařkitzen zan. Geřtaketa batek izutu zuen, ta izualdi ařek biotza gaizkitu zion; eta zure aita bezela, batean jeikita, bestean exerita, noiz ilko ote zan, beti gaizki, bañan, luzaro bizi izan zan. |
| INES | Ez dakit!... Aspaldi ontan gaxoak atsekabe asko igaro ditu... ta biotz-indařa aitu arazi diote. |
| MOŘOIA | Bai, ala da. Ta nik uste det, bere adiskide ta lagun onentzat ařkitzen ziranak izan dirala beretzat kaltegařienak. |
| INES | Sařitan geřtatzen dana. |
| MOŘOIA | Ez luke bañan geřtatu beař! |
| INES | Ez; ala da. Bañan, gauř egunean gizonak ez diote begiratzen zindotasunari, nořberaren onura ta irabazkinari baizik. |
| MOŘOIA | Bai; ¡zorioneko diru ořek beařketa aundiak ematen dizkigu! |
| INES | Ez da dirua bakařik: Diru-nayak baño geyago erotzen ditu gizonak aunditasun ta gaintasunak. Ez du iñořk nai besteen menpeko izaterik, nagusi ta jauntxo baizik; ta izakera ořek ekařtzen dizkigu bekaitz, gořoto, buřuka ta gaiztakeri guziak. |
| MOŘOIA | ¡Ařokeri ta aundikeriaren emaitz eta sořpena! |
| APAIZA | (*Atea irikiaz, mořoyari.*) Gazte... |
| INES | (*Pizkoř jeikiz.*) Zeřbait al-du aitak? |

APAIZA — Ez; dijuala au nagusiari lagun egitera.

INES — Bañan, gaizkiago ar̃kitzen al-da?

APAIZA — Ez, zu zaude geldi: mor̃oiak lagunduko dio. (*Mor̃oia gelara.*)

INES — ¿Aitor̃tu alda?

APAIZA — Bai; oso eder̃ki: or̃etzaz pozik egon bear̃ dezu.

INES — Bai, jauna; poz-pozik ar̃kitzen naiz; bada, bildur̃ nitzan ezeregin gabe eriotzak ar̃tuko ote zuen.

APAIZA — Ba, garaiz ta ondo egin du. Ta orain beste gauzatxo bat esan bear̃ dizut. Ez da atsegingar̃ia, bañan berak agindu dit il-bañolen zuri esateko; ta nere egin-bear̃a bete bear̃ det.

INES — (*Ar̃iturik.*) ¿Zer̃ da, jauna?

APAIZA — Exeri zaite. Esango balizuke aitaren *anima* zugatik zeruratuko dala, bañan ordañez txiro ta bear̃tsu igaro bear̃ko dituzula ur̃teak mundu ontan, ¿zer̃ irudituko litzaizuke?

INES — ¡Ai, jauna!... Badakit zer̃ dan!... Somatu nuen zer̃bait!... (*Negar̃ez.*) ¡Jaungoiko laztana!...

APAIZA — Bere naia da, Ines. Jainkoak bialtzen dizu bere maitasun-dematzat.

INES — ¿Zer̃gatik bañan, jauna? ¡Er̃uki izan bedi nitzaz!

APAIZA — Etzaitu aztuko Jaunak. Berak lagunduko dizu eramankizun guzietan.

INES — Bear̃ko... bear̃ko laguntasuna, onelako nekegar̃iak igarotzeko.

APAIZA — Izango dezu: baita, poztasun ta atsegin ugaria ere, neke oyek eramanpenez ar̃turik, aitaren *anima* zeruratu dezula gogoratuaz. ¿Ez al-da or̃ela? ¿Ez al-da zure maitasun oso ta aundiena, zure aitaren *anima* zeruratzea?

INES — (*Gogo-aldatuaz.*) ¡Ai, jauna! ¿Nere aitaren anima zeruratzeko, neke ta atsekabeak ar̃tu-bear̃a al-det?

APAIZA — Bai, Ines: or̃ela da. Txirotasun ta bear̃tasunean ar̃kitu bear̃a dezu. Or̃ela ger̃tatu da, ta ger̃takizunak datozen bezela ar̃tu bear̃ dira.

INES — ¡Ta... batere gabe... ezer̃txo gabe geldituu bear̃ al-det?

APAIZA — Ez luke nai ori zure aitak eta nik ere uste det...

zeřbaitekin gelditu ziñakela, aitaren egin-beařa al-danik ondoen beteaz: bada, Jaungoikuak ez du eskatzen neke aundi gabe ezin dan beařkizunik.

INES — Ta... ¿jakin al-nezake ze beařkizun bete-beařean ařkitzen dan nere aita?

APAIZA — Zure aita gaxoak... bete-beař du beařkizun gogoř bat... ta beařkizun ori da... diru ta ondasunak itzuli beařa.

INES — Ta ¿guzi-guzia itzuli beař al-du?

APAIZA — .....Guzia..... bai: bañan, zu ezeř gabe ez gelditzeařen.....

INES — (*Kemenez.*) ¡A, jauna! Ez det nai neregatik beařkizun ori bete gabe gelditzerik: nayago det ezeřtxo gabe gelditzea, nere aitaren anima, ařiskuan jařtzea baño!

APAIZA — ¡Ori da gogo-aunditasun ta egizko maitetasuna!

INES — Ori da nere egin-beařa: ta geřturik nago neke guziak neregan eramateko. Txirotasun, beařtasun ta apaltasun guziak ez naute ikaratzen. ¡Betoz neregain ořdainpide guziak, nere aitaren anima zeruratzeko badira.

APAIZA — ¡Ze biotz edeř ta maitekořa dezun!

INES — Nere aita da, jauna.

APAIZA — Bai; ta zu bere alaba zintzo, eredu ta oberik eziña. Jaungoikoak ordainduko dizu!

INES — Berari eskeřak emanez, orain ařte aukeraz ta ondasun ugariz bizi izan ba-naiz, auřerakoan lan-egiñaz tajutuko naiz nolabait.

APAIZA — Edeřki esana. Ta sinistu zazu, zure aita'ren anima zeruratuz, zerořena ere zeruratuko dezula.

INES — Ala nai nuke.

APAIZA — Bai, Ines, ala izango da: ta mundu ontan ere iritxiko'dezu zoriontasuna; bada Jaungoikoak ez du utziko ořdaindu gabe zure onbide zintzo ta maitasun edeř ori. Ta orain, aitari zerbait esatera noa, bere biotza lasai ta atsedentsu jaři dedin. Zu zaude emen. (*Gelara doa).*

INES — Ongi da, jauna. (*Oldozkoř.*) (*Txiřin-otsa.*) ¿Noř

ote da? (*Ixilik.*) (*Joxepa ageri da.*) ¿Zeř da, Joxepa?

JOXEPA — Idazki bat zuretzat. (*Ines'i emanaz*).

INES — ¿Idazketaria izan al-da?

JOXEPA — Ez, ezkuz ekaři dute. ¿Apaiz jauna aitarekin al-dago?

INES — Bai, Joxepa. Laisteř aterako da onezkero, ta geřtu itzazu garagařdo ta goxore batzuek.

JOXEPA — Ongi da. (*Joaten da.*)

INES — (*Idazkia irakuřtzen.*) «Ines anderea: Zuen sendagiĩe jaunak esan ditanez, aita gaxoaren eritasunak ordu lař ta estuak igaro-arazten dizkizu. Atsekabe aundia sořtzen zait zu ořela ařkitzeaz; ta joan naiz bereala, zuen sendagiĩearen baimenaz, atzo eři ontara etoři zan nere adizkide Arangoiti sendagiĩe ospetsuaren gana; ta geřtu dago zure aita ikuskatzeko. Joango da zortzirak aldean; neronek lagunduko diot. Zuk ez dezu ezertxo ere ařduratu beařik. Zuganako maitasun gařtsuak beařtzen nau zure aldez zeřbait egitera, eta zure egoera iĩun ta lařia arintzeko ustez nere laguntasun osoa zuri eskeintzera. Agindu bada, Ines maitea, uste ta azkatasun osoaz, orain ta beti.—Ařiaga'tař Ixidoř.» (*Izketan.*) Erakusten du onek zindoro bere biotz xamuřa..... ¡Eskařtzen diot!.....

## SEIGAŘEN AGEŘALDIA

**Lengoak, Kařmele ta sendagiĩea; gero Ixidor.**

MOŘOIA — (*Ateratzen da gelatik laisteřka.*)

INES — (*Ařituta.*) ¿Zeř da?

MOŘOIA — (*Geldïtu gabe.*) Sendagiĩeari deitzera noa.

INES — (*Negařez.*) ¡Ai nere aitatxo!..... ¡Il beař du!..... ¡Jaungoiko maitea! (*Sařtzen da gela'ra.*)

JOXEPA — (*Beste atetik, ařituta.*) ¡Nora joan ote da mořoia laisteřka?..... ¡Ta emen iñor ez!..... (*Gelaruntz joanez.*).... Nagusia gaizkiagotuko zan..... (*Ate-*

ondoan, entzun naian.) ¡Gaxua!..... Ines negaŕez ari da!..... ¿Saŕtuko ote naiz?.... (Zintzaŕi deya.) ¿Noŕ ote da? (Joaten da atea idikitzera.)

KAŔMELE (Saŕtuaz.) Zeŕ geŕtatzen da?

JOXEPA Ez dakit oraindikan ezer. Sukaldean aŕkitzen nintzan lanean, ta moŕoia laisteŕka ikusi detanean aŕituta gelditu naiz.

KAŔMELE Neri ere ori geŕtatu zait. Kalean bat-egin det moŕoiarekin, ta galdetu diot beŕi txaŕen bat ote dan, bañan ez du izan erantzuteko astirik.

MOŔOIA (Sartuaz.) ¿Bizi al-da?

JOXEPA Ez dakit ba.....

KAŔMELE Ain gaizki utzi al-dezu?

MOŔOIA Bai..... il ez-bada..... (Saŕtzen da gelara.) (Kaŕmele ta Josepa zerbait ikusi nayean.)

INES (Baŕenean.) ¡Aitatxo maitea!..... ¡Aguŕ!.....

JOXEPA (Eŕdi negaŕez.) ¡Gaxoa!

KAŔMELE Tamalgaŕi da..... bañan, eriotze ona izango du, ta Jaunari eskeŕak ematekoa da geŕtasun oŕtan iltzea.

SENDAGIĻEA Aŕatsalde on. (Zuzen gelara.)

JOXEPA Sendagaŕi eragiļe bat emango balio!

MOŔOIA (Gela'tik ateriaz.) Zapi leun bat, Joxepa.

JOXEPA ¿Nola dago?

MOŔOIA ¡Gaxoa..... oŕenak egin du!

JOXEPA ¿Il al-da?

MOŔOIA Ez, bañan, ez da luzaroko. Ots! zoaz bizkoŕ. (Joxepa badijoa.)

KAŔMELE ¡Gaxoa!

MOŔOIA Bai gaxoa, bañan gaxoago Ines, bere alaba zintxo ta gaŕbia.

KAŔMELE Ala dirudi, bai: bein bakaŕik itz egin det berarekin, ta beŕtan oso egokiya iruditu zait.

MOŔOIA ¡Izango ez da ba!

KAMELE Tamalgaŕi da aita iltzea, ta beraz, umezuŕtz gelditzea; bañan izango du ongi izateko bidea, Jaungoikoak osasuna ematen badio.

MOŔOIA (Beretzat bezela.) ¡Gaxoa! Orain aŕte ugaritasunean..... ta auŕerakoan ezeŕ gabe!.....

KAŔMELE ¿Zeŕ? ¿Ines ondasun gabe?

| | |
|---|---|
| MOŔOIA | Ezin det ulertu..... (*Joxepa agiri ez dalako.*) ¿Noraiño joan ote da Joxepa ori? |
| KAŔMELE | Bañan ¿zer diozu? ¿Ez al-da ba etxe bat baño geyagoen jabe? |
| MOŔOIA | (*Beregain.*) Ez nuen ezer esan beaŕ..... (*Kaŕmele'ri.*) Ez..... nere iritzi bat..... |
| KAŔMELE | (*Beregain.*) Zer geŕtatzen ote da! Ba, nolabait jakin beaŕ det. |
| MOŔOIA | Emakumea!..... ¿zeŕtara etoŕi zera? |
| KAŔMELE | Nik..... gauzak gaŕbi esatea nai izaten det. |
| MOŔOIA | Baita nik ere, ta..... ¡tira! orain ez da beŕiketarako garaia! |
| KAŔMELE | Ez dira beŕiketak..... ¡Iñori etzaio ziririk saŕtu beaŕ! |
| MOŔOIA | Ziria saŕtu? |
| KAŔMELE | Au ta bestea dituela ta..... |
| MOŔOIA | ¡Zoaz emendik, emakume dol̄oŕ ori!..... |
| INES | (*Gelako atetik: atera gabe.*) ¡Zaudete ixilik, ¡otoi! (*Ixten du atea.*) |
| JOXEPA | (*Zapia moŕoiari emanez.*) ¿Bañan zeŕ dezute? |
| MOŔOIA | (*Zapia aŕtu ta gelara dijoala.*) Leyotik botako nuke oŕelako emakumea! |
| KAŔMELE | ¡Jakingo det zer egin! (*Abiatuz.*) |
| JOXEPA | ¿Zeŕ dezu, emakumea? |
| KAŔMELE | Ezer ez..... neri ez diratela ziririk saŕtuko: ta Ixidor'i ere ez. Aguŕ. (*Badijoa.*) |
| JOXEPA | Zuaz, andrea, zuaz! Ori beaŕ degu orain..... !len-dik ez degu atsekaberik eta!..... Bañan, ¿zeŕtara etoŕi da emakume ori? |
| INES | (*Baŕenen.*) ¡Ai nere aitatxo maitea..... ¡Aguŕ! |
| JOXEPA | ¿Zeŕ ote da? (*Joaten da gelaruntz.*) |
| INES | Eŕuki zaite, Jauna!..... Il da nere aita! |
| JOXEPA | (*Negaŕez.*) ¡Il dala!..... ¡Jesus!..... (*Iŕikitzen da gelako atea, ta ateratzen da Ines negaŕez, eta Apaiza bere ondoren, eta auek ateratzean saŕtzen da Joxepa.*) |
| APAIZA | Ez etsi oŕegatik. Jaŕi zazu Jaunarengan zure uste guzia. |
| INES | Gaizkatu ote da nere aita!..... ¡Zeruratu ote da bere anima! |

| | |
|---|---|
| APAIZA | Bai, Ines. Ez izan ezbairik ořetaz. Zure opari ta eskeintzaz, zure maitasun ta zintzotasunez inguraturik zeruratu da zure aitaren anima. ¡Goyan bego! |
| INES | Biotz-biotzez eskeintzen dizkiot Jaunari nere atsekabe, oñaze ta bizitza guzia. *(Jařaitzen du negařez.)* |
| APAIZA | Berak ořdainduko dizu. Zure onbidezko egipen ařigařiak, izango dute sariya. |
| IXIDOŘ | *(Atsekabez agertuz, atetik:)* ¿Sařtu al-niteke? |
| APAIZA | Auřera, Ixidoř. |
| INES | *(Malkoak legořtzen ari da, ta Ixidoř sařtzen danean agertuko du ařpègiya.)* |
| IXIDOŘ | *(Ziñez ta benaz.)* Biotz-biotzez laguntzen dizut zure atsekabean. |
| INES | *(Apuř batean Ixidoří begira egonez).* ¡Badet lagundu beařa...... ta Jaunari eskatu beařko..... batez ere zure izebaren izakera ikusita. |
| IXIDOŘ | Badakit emen izan dala..... *(Tamal.)* |
| INES | Bai, ta nere biotza mindu duela ere bai.....! |
| IXIDOŘ | Ines: zure biotza mindu badu, neretzat ere mingaři izan da. Nik ez det beař beste gauzarik: zu bakař bakařik. Ořegatik natořkizu nere biotzezko aitořpenaz, zure neke ta miñak arintzeko ustez. |
| INES | Eskeřak biotzez. |
| IXIDOŘ | Nere izebaren izakerak, ez du itzalduko nere zureganako maitasuna. ¿Ontzat-ařtzen dirazu bada nere eskeintza? |
| INES | Bai, Ixidoř: ta eskeřik asko. |
| IXIDOŘ | Zuri ezkeřak. |

**Lenengo atala'ren azkena.**

# BIGAŔEN ATALA

AGEŔTOKIAN.—*Jostun txiro ta beaŕtsuaren lantegi bat. Lanmai, aulki ta josketarako beaŕ diran beste lankaiak. Oŕman exerita Inesen aitaren antzezki bat. Axote, ingi ta idaztoŕtza.*

## LENENGO AGEŔALDIA

**Joxepa bakaŕik, gero Ixidoŕ**

JOXEPA ¡Ines gaxua! Ludi ontan egipidez uts-gabeko emakumerik ba-da, Ines da bat. Lenago bere aita bizi zanean, osasun ta lasaitasunez inguraturik, beaŕtsuei lagunduz, alde guzietan dirua zabaltzen... Bai; amaika nekazari ta beaŕtsuen negaŕ-malko legoŕtuazi ditu. Orain, bera aŕkitzen da beaŕtsu... Zail da, goian ugaritasunez aŕkitu diranentzat beera jetxirik ezeŕ-ezean ta beaŕtasun apalgaŕian oitutzea... Eskeŕak bere onbide sendoari. ¡Ona da gaxoa! neretzat oberik eziña.... ¡Ixidoŕ'ekin noizbait bat-egingo balu!.... oŕduantxe poliki..... (*Deya.*)..... ¿Nor ote da? (*Irikitzen du atea.*) Auŕera, Ixidoŕ jauna.

IXIDOR (*Saŕtuaz*). Egun on.

JOXEPA Baita zuri ere.

IXIDOR ¿Ez al-da Ines etxean?

JOSEPA Ez; bañan laisteŕ etoŕiko dala uste det.

IXIDOR Ezingo det itxoin.

JOXEPA Beaŕ-beaŕekoa al-dezu?

IXIDOR Bai. beaŕekoa ta..... zoritxaŕez naigabekoŕa.

JOXEPA ¿Korapiĺoen bat al-degu orain ere?

IXIDOR Beŕirik ez; bañan lengoa azkatu ezina. Geroago ta gogoŕago aŕkitzen da. Ta ez det aŕkitzen nere aita limuŕtzeko biderik.

JOXEPA Ta; ¿zergatik aŕkitzen da, ba, zure aita jaŕkera oŕtan?

IXIDOR Ba, Ines len aberats eta orain ezer-ezean aŕkitzeak susmo txaŕak ematen omen dizkio bere aitatzaz ta esan dit, ez dala ezkonduko bere seme bat gora-bera oyek izan dituan gizon baten alabarekin, geŕtagai oŕen sustraya ageŕtu gabe.

JOXEPA (*Kemenez.*) Ta ¿Ines'en eŕuz izan al-da ba? (*Eŕukioŕ.*) ¡Gaxoa! ¡beretzat izan da kalterik aundiena!

IXIDOR Bai, ala da.

JOXEPA ¡Amaika etsipen aŕtu beaŕ da mundu ontan!

IXIDOR Ala ta guztiz ere, ni gertu nago jaŕaitzeko; ta esango diozu Ines'i nik eztedala utziko, ta..... ez estutzeko oŕegatik. Gauŕ ez bada, biar izango da. (*Abiatzen da*).

JOXEPA Laisteŕ etoŕiko da onezkero.

IXIDOR Bai, baña ez nuke nai nere aitak emen izan naizela jakiterik, ta banoa laisteŕka.

JOXEPA Zoaz ba; ta esango diot.

IXIDOR Egokitzen bazait, etoŕiko naiz gero, berarekin itz egitera.

JOXEPA Ongi da.

IXIDOR Aguŕ.

JOXEPA Zoaz ongi.

## BIGAŔEN AGEŔALDIA

**Joxepa bakaŕik, gero Ines.**

JOXEPA Zintzoro agertzen da mutil ori..... Goralgaŕi da bere gizabidea! Orain, bere aitak ze asmo aŕtzen duen ikusi beaŕ! Nere ustez, izebak eŕu geiago du, aitak baño. ¡Ondo gogoratzen naiz bai, Imanol gaxua il-zorian aŕkitzen zanean, zer egin zuen emakume aŕek! Ines'en ondasuntaz zerbait somatu zuenean..... ¡kaixo mutil!..... ¡Ori ez da gizalegea!..... (*Oñ otsa somatuaz.*) Badatoŕ..... (*Ines, beltzez jantzita, apalki ageŕtuko da; bañan bere jatoŕizko eredu ta gizapidea adiraziz.*)

INES (*Sarturik*). ¡Au mundua, Joxepa!

JOXEPA ¿Zer da ba?

INES Deabrua beti ari da lanean naspil-ondoren.

JOXEPA Ez du beste zer-egiñenik; bañan zu menpetutzea nai badu, izango ditu lanak.

INES ..... Ez dakit..... ez dakit..... Uste gutxien danean arkitzen dira naigabeak.

JOXEPA ¿Ixidor ikusi dezu, noski?

INES Bai.

JOXEPA Emen izan da.

INES Ba, emendik zijoala kale-berian bat egin degu. Gelditu nau, ta iru edo lau itz egin baño len, ikusi gaitu bere aitak..... ¡Ora!..... ¡Ez dizut esan nai nolako arpegi iluna jari digun!

JOXEPA ¿Bai, e?

INES Bai, Joxepa: arpegi iluna benetan. Ni izututa gelditu naiz, ta esan diot Ixidor'i, orelako atsekabeak eramatea baño nayago detala gure maitasun-bideari utzi, ta pake-pakean bizitzea.

JOXEPA ¡Ori esango zinion bada! Ta, ¿zer erantzun dizu?

INES Ez estutzeko oregatik; ta jaraitzeko. Bañan, badakizu, bere aitaren gogoz izan ezik, ez ditugu izango naigabe ta atsekabeak baizik. ¿Nola naidezu bada jaraitzea?

JOXEPA Ala da, bañan..... nere ustez, Ixidor bayetzean dagon artean, zuk ez dezu atzera-egin bear. Bada, zindoro jaraitu ezkero, gaur ez bada biar, Ixidor'ek limurtuko du noski bere aita.

INES (*Ziñestegabe*)..... !Baliteke!.... Bañan, ni ez naiz aleginduko. Berez ta bide zuzenez etorzen bada..... ongi etori; bestela aurera gure lanean.

JOXEPA Bai,..... bai..... ala da. Bañan, ain egoki aukeratu, ta, gero ezer-ezean gelditzea ere..... tamalgaria da.

INES Ta, ¿zer egingo diogu ba?..... Jaungoikoaren naya izango da, ni beartsu arkitzea: ta gertu nago egoera ontan jaraitzeko,..... zuk laguntzen badidazu.

JOXEPA Nik bai; ni ez naiz aldenduko zuregandik. Bañan, badakizu, bete-betean gabiltza janari ta

beste beaŕ-beaŕeko bizigaŕiak irabazteko: ta ogia geroago ta garestiago, babaŕun ta patatak apaŕa bezela gorontz; etxe-eŕentak beŕiz, eŕuki gabe jaso ta jasotzen ari dira; ta..... oŕela beste gauza guziak. ¿Nola nai dezu?

INES — Bai, oŕela da; bañan, guk ez degu gauza aundi beaŕik bizitzeko. Lenago ugaritasunean bizi izan aŕen, oitu gera uritasunean ere. Zoriontasuna, Joxepa, gauzak datozkigun bezela aŕtuz aŕkitzen da.

JOXEPA — Bai..... zu bezelako ontzale ta donetsua izan ezkero.

INES — Donetsua izateko askoren beaŕean arkitzen naiz. (*Deya*). Ea nor dan. (*Joaten da Joxepa atera.*)

JOXEPA — (*Idazki bat eskuan dakaŕela.*) Idazkia zuretzat.

INES — (*Jeikiaz*) ¿Zeñena ote da? (*Izenpeari begiratuz.*) ¡E! Ixidor'en aita'rena? ¡Ze ote dakar! (*Irakuŕiaz.*) «Ines jostunari.»

JOXEPA — Idazki-buru motza jaŕi du.

INES — (*Irakuŕiz.*) «Etoŕi nintzan eŕi ontara udate alai ta paketsua igarotzeko ustez: bañan zure uzi ta auzaŕkeriak eragotzi bear dirate». (*Izketan.*) !Auzarkeriak!..... ¡nere uzi ta auzarkeriak!..... ¡Au ere entzun bear!..... ¡Jaungoiko maitea! (*Irakuŕiz.*) «Ikusi zaitut Kale-beŕian nere semearekin izketan; bañan, alpeŕik zabiltza. Nere semea ez dago jostun gaxo batekin berdintzeko; batez ere, zure aitatzaz entsun ditudanak argitu arte». (*Negaŕez.*) ¿Zer esan nai du nere aitatzaz? ¡Nere aitak azken zintzo ta zuzena izan du! zeruan dago: ta zerbait esan-beaŕa izan da ere, nik ez det eŕurik.

JOXEPA — Ez, Ines, ta gizon oŕek ez du zer esan beaŕik ere.

INES — Esan dezala garbiro, zer entzun duan nere aitatzaz.

JOXEPA — (*Zaleki.*) Ez nekatu, Ines, ta jaŕaitu irakuŕtzen.

INES — Ez..... ez det nai geyago irakurtzerik ere!..... Jaŕaitu rezoŕek, nai badezu. (*Idazkia emanez.*)

JOXEPA — (*Idazkiari begira*)..... ¿Non ziñan?..... (*Irakuŕiz*) «alpeŕik zabiltza»..... ¡A! emen da. «Utzi

bada auzařkeri oyei, ta jakinarazi nere semeari, neronek beste bide bat ařtu baño len». Ařiaga, tar Eřamun.

INES — (*Jeikitzen da*). Oraintxe beřtan idatziko diot.

JOXEPA — ¿Nori?

INES — Ixidoř'i.

JOXEPA — Ez dezu ori egin beař.

INES — Bai ta bereala. Ez det atsekabe-biderik beař. (*Exeri ta jařtzen da idazten.*) (*Ixil aldia.*)

JOXEPA — ¿Zer jařtzen diozu?

INES — Ba..... ¿ez al-dezu irakuři zer dion idazkiak. (*Jařaitzen du idazten.*)

JOXEPA — (Auxen da ba!..... Badakit Ixidor naigabetuko dala..... ¡Tamalgaři ¡da!) (*Ines'i.*) Nik ez nioke ukorik emango.

INES — (*Idazten ari dala*). Ez diot ezetzik ematen; baizik adierazi pakean uzteko, bere aita egokera ořtan ařkitzen dan ařtean.

JOXEPA — Nik uste det..... apaiz jauna'ri esatea izango litzakela egokiena. (*Ixil aldia.*)

INES — (*Idazkia amaituaz.*) Naikoa da onekin. (*Sařtzen du azalpean.*)

JOXEPA — ¿Zer jařtzen diozu?

INES — Esan dizutana bakař-bakařik.¡(*Idazkia emanez.*) ¿Bidaliko al-diozu?

JOXEPA — Bai, bai, ¡datořena datořela! (*Abituaz.*) Emen naiz bereala. (*Joaten da.*)

INES — (*Bakařik.*) ¡Gora-bera asko ikusten da ludi ontan! ¡Goitasun ondoren apaltasuna! ¡onespen ondoren, narga ta erdeñuak!...... ¡Ludi atzipekořa benetan! Atseden, zorion, pozkida ta alaitasun iduriz, kezka, zorigaitz, atsekabe ta goibelaldiak damazkigu..... ¡Mundu ontako biziera, ez da, ez, egiazko bizitza! beraz, aldezakegun gogo-atsedena, jaungoikozko legedi-arauz bakař-bakařik iritxi genezake, datořkigun zorian apalki jařaituz. (*Oldozkoř.*)

JOXEPA — (*Sařtuta.*) Bidali diot.

INES — Ongi da..... (*Gogo-aldatuz.*) Ta ¿noiz asi beař degu lanean?

JOXEPA ¿Ekafi al-dezu Andre Kostantzi'ren soñekomiesa?

INES ¡Ene bada! ¡ez da gogoratu ere! Zoŕtziretako joan beaŕ nuen neuŕiak aŕtzera!

JOXEPA Tira..... ez du zer-egin aundirik eta etxean aŕkituko dezu oraindik.

INES Bañan ¡au burua!

JOXEPA Ez naiz aŕitzen. Ixidoŕ-ekin kalean bat-egiteak aztu-arazi dizu.

INES Baliteke... Ba, bereala joan beaŕ det. *(Abiatzen da.)*

JOXEPA Bai, bai, bestela ez degu lanik.

INES Laister biuŕtuko naiz. Gero aŕte.

JOXEPA Bai.

## IRUGAŔEN AGEŔALDIA

**Joxepa bakarik, gero Apaiza**

JOXEPA ¡Au ere bada ba!... «Usterik gutxienean, gurutzea atari auŕean». Esaera au gertatu da gurekin... Bai, jakiña: «Usteak alde erdia ustel». Baña !zer egingo diogu ba!... datoŕkigun bezela artu beaŕ: bada «pake txaŕa obea da, geŕa ona baño»... ¡Ines gaxua!... ¡Amaika neke ta samintasun eraman beaŕa ba-du! Aita bizi zanean, etzan oŕelakorik: mordozka agertzen ziran ezkongaiak bere ondoren. Bañan egia esateko, ez dira guziak berdiñak: Ixidoŕ orain ere, bere alde, zintzoro ageŕtzen da, ta pozik arkitzen giñan, bañan... oŕek ere *kale* egin beaŕ digu.

APAIZA *(Sartuaz)*. ¡Aguŕ Miren garbiya!

JOXEPA ¡Eŕu gabe soŕtua!

APAIZA ¿Zer da Josepa?

JOXEPA Emen gaude... lan egiteko asmoz. Ta, ¿beroŕek zer darabil?

APAIZA Zuek ikustatuaz, joan dan asteko joskintzaren ordaiña ekaŕtzera.

JOXEPA Ez naiz gogoratzen.

APAIZA Ba, eleiza'ko aldare-zapiak.

JOXEPA ¡Al... ori utsa da.

APAIZA Nik ematen dizudan saria ere ez da izango aundia. Amabost eŕeal.

JOXEPA Naikoa da, bai. Exeri bedi.

APAIZA ¿Non da Ines?

JOXEPA Soñeko bat egiteko neuŕia artzera joan da: bereala etoŕiko da.

APAIZA Tira ba. (*Exeriaz*). Gañera, gertu beaŕ didazute zerbait «Eusko-Janztegi»'rako ere.

JOXEPA ¿Zer nai du gertutzea?

APAIZA Ori, zuek obeto jakingo dezute. Izan ditezela berogaŕiak.

JOXEPA ¡Badizkio... arako... artiḻezko txamaŕ batzuek umetxoentzat?

APAIZA Edeŕki asmatu dezu. Langiḻe ta beaŕtsuen ume gaxoak beaŕ dute zerbait negu'ko aize otz eta ekaitzak eramateko.

JOXEPA Bai jauna, bai.

APAIZA Ta, langiḻeak berak ere; ez al-dute zerbait beaŕko?

JOXEPA Nai bada txaŕtes, alkandora naiz txamaŕa batzuek...

APAIZA Bai, edeŕki. Guzia beaŕean arkituko dira gaxoak, neguko otz eta bustitzeari auŕka egiteko.

JOXEPA Ba, alegindukо gera pizkoŕ ta ondo egiten; onuratsu ta goralgaŕia dalako egikizun ori.

APAIZA Bai, bai; kadakit, zuek al-danik ongien egingo dituzutela, ta... geyegi irabazi gabe.

JOXEPA Oŕetara beaŕtuak gaude, txiroen alde izan ezkero: bada, ¡zenbat beaŕtsu ta langiḻe gaxo ikusten ditugu otz-ikaraz, soñeko gutxi ta erdi uŕatuak dituztelako!

APAIZA Bai; eŕukaŕi dira gaxoak.

JOXEPA Aberatsak geyago arduratu beaŕ luteke euskojanztegi oyei lagunduz.

APAIZA Bai, bañan, askoz ere geyago egiten dute arako... bitaŕtekoak; ez beaŕtsu ez aberats arkitzen diranak. Egia esateko, badira banakak aberats aŕtean ere. Lengo egun batean, esan didatenez,

beŕogei ta amaŕ alkandora sendo-sendo ta beŕogaŕiak bialdu omen zituan Ondegi'taŕ Miren andereak.

JOXEPA ¡Ze edeŕki!

APAIZA Onuratsua ta beaŕ-beaŕekoa da egikizun ori; batez ere aberats eta lasaitunez bizi diranentzat.

JOXEPA Bai, bañan, goimaitasun gutxi dute bere biotzetan. Beaŕtsuak, berori bezelako jaun biozdun beaŕean arkitzen dira, ta... (*Itunduz.*)..... gu ere bai; batez ere garai ontan.

APAIZA ¿Zerbait al-dezute?

JOXEPA ¿Zerbait bakaŕik? Bai, jauna, bai.

APAIZA ¿Zer da ba?

JOXEPA Ba... Ixidoŕ'ekin ezkontzeak ere, uts-eman beaŕ digula.

APAIZA ¡Egia ote da!

JOXEPA Obe ez.

APAIZA ¿Nola bañan?

JOXEPA Ba... aitak ez duela nai... (*Ines somatuz*). Badatoŕ bera.

## LAUGAŔEN AGEŔALDIA

### Lengoak eta Ines.

INES (*Saŕtuz*). ¡Oi! ¿Emen al-zan berori?

APAIZA Bai; emen gaude. Zuetaz ere gogorotzen gerala erakusteaŕen.

INES Badakit berori astuko ez dala: eta biotzez eskaŕtzen diot zindotasun onurakoŕ ori.

APAIZA Al-banu... egingo nuke geyago ere.

INES Naikoa egiten du, jauna.

APAIZA Askoz geyago eginda zaude zu nere alde auŕeko urteetan.

INES Urte ayek...

JOXEPA Urte ayek joan ziran: oraingoa zuzendu beaŕ degu.

INES (*Joxepa'ri.*) ¿Esan al-diozu zerbait?

JOXEPA Bai; esan diot.

APAIZA Bai, ta afituta geiditu naiz. Bada. nere ustez, Ixidof'en aita gizon ona da.

INES Bai, noski.

JOXEPA ¡Ummmmm! Seta gogoftxoa ere izan beaf du! Bada, jakitun egon baño len, ez du gizonak gertaerarik azaldu beaf.

APAIZA ¡Badakit nondik etoriko dan aurka-egite ori! Ezagutzen dezu ori... zera... (nola da ba)... Garcia Ruigomez de Bengoetxea?

JOXEPA ¡Josu! Luzea da!

APAIZA Euskal-abizena agertu-aftekoa. Ori egiten dute Madrid-aldeko guziak. Beren guraso ta aiton guzien abizenak asteftzen ibiltzen dira, euskerazkoa agertu arte. Ba... Garcia, Ruigomez edo Bengoetxea orek du alaba bat, eta, badakit Ixidof'en aita berarengandu nayan dabilela, bere adizkide egiñaz.

JOXEPA *(Asare).* Eta ¿zergatik etori beaf dute oyek onera ezkongai-ondoren.

APAIZA *(Iri-parez).* Gaztelu-aldeko artadiak ez omen dute aurten ezkurik eman, ta *ezkur*-ordaiñez *titulua* eskeintzera etori omen dira.

JOXEPA ¡Ze titulu!

APAIZA ¡Markesa!

JNES *Markesa* al da?

APAIZA Ala diote: bañan... txanpon gutxitxo *markesa* izateko.

INES Bai bañan, batak *titulua* ta besteak dirua, oso ederki izateko bidea.

JOXEPA ¡Ez, ez, ez!... «Danbolin *pagatuak* soñu txara jotzen du»..... ta banoa baren-aldera. Geroarte, jauna.

APAIZA ¿Ba-al zoaz?

JOXEPA Bazkaldu beaf-badegu, zerbait geftu beafko.

APAIZA Ongi diozu.

OXEPA Geroarte ba. (*Barenerako atetik*).

APAIZA Bai, Joxepa. (*Ines,i*). Ta... ¿benetan al-da Ixidof'i idatzi diozula bere eskapena ukatuz?

INES Ukatu... ez: nik ez diot aurerako ezetzik ematen: atsekaberik ez izateafen esaten nion itzik ez egi-

| | |
|---|---|
| | teko beŕiz kalean, eta idazkirik ere ez bialtzeko, bada nik ez diotela erantzungo. |
| APAIZA | ¡Ori esan al-diozu?... Bilduŕ naiz asaŕetuko otedan! |
| INES | Ta zer egingo diot ba? Ez da eŕez bere aitak jakin gabe zerbait egitea; ta ni aren bilduŕ naiz, bada len ere naikoa ikaratu nintzan bere aŕpegi-iluna ikusiz. |
| APAIZA | ¡*Markes* txatxu oŕek esango zion zerbait zure aita'tzaz! |
| INES | Ori da neretzat tamalgaŕia. |
| APAIZA | Bai; bañan ez dezu estutu beaŕ: datoŕena-datoŕela, lasai aŕkitu. Ni ere kontuz ibiliko naiz, ta..... ikusiko da. (*Jeikitzen da).* |
| INES | ¿Ba-aldoa? |
| APAIZA | Bai; ta zuk jaŕaitu zure onbideari. *(Aterontz joanez).* |
| INES | Nik Jaungoikoarengan jaŕtzen ditut nere zori ta uste guziak. |
| APAIZA | Berak ondoen zuzenduko dizkitzu... Aguŕ, Ines. |
| INES | Bijoa ongi. *(Ikusten du Ixidoŕ aterontz datoŕela*). ¿Ixidoŕ al-da ori? |
| APAIZA | *(Atean gelditvta).* Bai, bera da. (*Ixilik: Ines aŕitufa, zer egin ez dakiela*). |

## BOSKAŔEN AGEŔALDIA

**Apaiza, Ines ta Ixidoŕ.**

| | |
|---|---|
| IXIDOŔ | (*Saŕtu gabe*). Egun on, apaiz jauna. |
| APAIZA | Ala ekaŕi, Ixidoŕ. ¿Zer degu? |
| IXIDOŔ | ¿Ines emen al-da? |
| APAIZA | Emen izan beaŕ du. (*Baŕenera begiratuz*). ¡Ines! |
| INES | (*Aterontz joanaz). ¿*Zer da? |
| IXIDOŔ | ¿Baimenik ba-det? |
| INES | ¡Auŕera!... |
| APAIZA | (*Ateratzeko igitu ta Ixidoŕ'i saŕtu-araziz*). Oŕ gelditzen zerate. |
| IXIDOŔ | Ez jauna: berori gabe, ez. |

APAIZA — Zuek... zerbait esan beaŕa dezute noski, ta...

IXIDOŔ — Ez jauna, ez: *mesedez* eskatzen diot.

INES — Bai jauna; saŕtu bedi; nik ere nayago det beroŕen auŕean itz-egitea.

APAIZA — Ots, ba... *(Alegiaz)*. Zer ote dabil gazte auen aŕtean!

IXIDOŔ — Nik bezin ondo badaki beoŕek.

APAIZA — Ez dakit ba...

IXIDOŔ — Ona, jauna..,

INES — Exeri bitez. (*Aulkiak eskainiz). (Irurak benaz itz egingo dute*).

IXIDOŔ — *(Exerita)*. Eŕi polit ontara etoŕi nintzan ezkero, nere ibilkera, atsegin ta zorion guziak, Ines, emakume egoki ta onbidetsu onen menpean utzi nituan. Pozez aŕkitzen nintzan beronen aŕpegi argia ikusirik eta nere gogo ta maitasuna ontzat aŕtzen zuelako ustez. Bañan..... (*Idazkia erakutsiz*). idazki onek zauritu du nere biotza. Ezin det ziñestu zuk idatzi dezula... ¿Zer didazu, Ines?

INES — (*Lotsaz ta apalki*). Bai... nik idatzi det; bañan, ez zure biotza zauritzeko ustez... ziñeztu zazu, nik ez det ezertxo ere zure auŕka.

IXIDOŔ — (*Maitekoŕ*). Oŕela izanik... ¿zer dala-ta bialdu didazu, idazki au?

INES — ..... Zure aita!

IXIDOŔ — (*Beriala-aŕiturik*). Nere aitak beaŕtu al-zaitu?

INES — Beaŕtu... ez da bai. Badakizu zure aitak ez duela nai nik zurekin itz-egiterik; ta nik ere ez det nai zure aitarekin asaŕe-aldi ta naspiŕik. *Pake*-zalea naiz.

APAIZA — Sinisten det. *(Ixidoŕi)*. Ines beti izan da *pake*-zalea, ta iñorekin ez asaŕetzeagatik aukera-bide guziak utziko lituzke.

IXIDOŔ — Izakera ona da. Bañan, ¿nola nai dezu, ez idatzi, ez itzik egin gabe jaŕaitzea?

APAIZA — Emen, lenbizi jakin beaŕ dana da, bata-bestearenganako maitasun egiazkoa dezuten ala ez.

IXIDOŔ — Nere aldez, ez dago ezbairik. Aspaldian soŕturik aŕkitzen zan neregan, nere gogoko emazte-gai-irudi bat: bañan, etzitzaitan iñolakoz ageŕtzen

irudi-oŕen antzezkirik, eŕi ontara Jaungoikoak zorionez bidali ninduan aŕe: Inesengan bakaŕik aŕkitu det antzezki ori. Beraz, jakiña, Ines bakaŕik izan diteke nere maitasun-gai.

APAIZA ¿Zer dizkiozu, Ines, aitoŕpen aŕgi oŕi?

INES Lotsaturik aŕkitzen naiz itz oyek entzuteaz.

IXIDOŔ Biotz-izketa da, Ines: ziñestu zazu.

INES (*Apalki*). Biotzez eskaŕtzen zaitut, Ixidoŕ.

IXIDOŔ ¡Gertu al-zaude bada gure ezkongai-bidean jaŕaitzeko?

INES Bide legun ta egokian jaŕtzen bagera, poz-pozik: ta ori izango litzake neretzat atsegingaŕiena.

IXIDOŔ (*Pozez*). Maitasun egizkoŕ ta onbidetsuak bide guziak leguntzen ditu.

APAIZA Ta... ¿aitak ez al-dizute eragozpenik jaŕiko?

INES Ori da nere bilduŕ-gaia.

IXIDOŔ Ona: Nere aitak, egia esateko, seta gogoŕtxua du; zakaŕa da asaŕetzen danean, ta edozer egiteko gertu aŕkitzen da, gero negaŕ egingo ba-du ere. Oŕegatik, bere asaŕe-aldietan poliki ibiĺi beaŕ da: ta biderik onena izaten da, apal-apal egin ta ixilik egon.

INES ¡Ixilik egon!... Ez da eŕez itz iraingaŕiak entzun-ondoren.

IXIDOŔ ¡Nere aitak iraundu zaitu, beraz?

INES Nerau... ez: bañan bai nere aita; eta nere aitari egiten zayona neroni egitea bezela da.

IXIDOŔ Bai: oŕela da... Atsekabe zait!

INES (*Tamal*). Nere aita, aberats, diru askoren jabe izan ondoren, il-onduan bate-gabe aŕkitu zan...; egiya da!..... bañan, beti izango da tamalgaŕi bere alabari gogo-gaiztoz oroitarazitzea.

APAIZA Noski... etzuen gogo-gaiztoz egingo.

IXIDOŔ Dana-dala, gaizki-egiña da.

APAIZA Bai: zorigaitz asko izan du gaxu onek. Dakizun bezela, aita bizi izan zan aŕtean, guztizko ugaritasunean aŕkitzen zan; etzuen iñoiz izan ezertxoren beaŕik: bañan, bat-batean aŕkitu zan guziabeaŕean; ¡ogia jateko ere lan-egin beaŕean!

(*Ines'ek agertuko du ituntasuna, eskuaz begiak estaliz*).

IXIDOŔ (*Laztantasun ta eŕukiz*). ¡Ines! Geŕtakizun oyek ez dute itzali, ez da gutxitu ere, zu ikusiz bakaŕik nere biotzean soŕtu zan zureganako maitasuna, sendatu baizik; ta maitasun au, lenengotik zintzoa izanik, gauŕtik auŕera sendoago ta indaŕtsuago agertuko da.

APAIZA Adoretu zaite, Ines, Ixidoŕ'en aitoŕpena entzuteaz; bada, onbidez dabiltzanak, geroago edo laisteŕago, elduko dira azkenera.

IXIDOŔ Bai Ines. Nere aitak ez du nai; ta gure elkaŕtasuna ikusiz setatsu ta mukeŕkeriz aŕkitzen da; egia da; bañan nolabait limuŕtuko degu, batez ere... apaiz jaunak laguntzen bagaitu...

APAIZA Beaŕtua nago al-detan guzia Ines'en alde egiteko.

INES Eskeŕik asko, jauna.

IXIDOŔ (*Ines'i*). ¿Geŕtu al-zaude bada egunen-batean nerekin bat-egiteko?

INES Atsegingaŕi ta onuratsu izango litzake neretzat.

IXIDOŔ (*Pozez*). Ez nuan nai bada ori jakitea besterik.

APAIZA Ia ba, (*Jeikiaz*). ainbat laisteŕen eraltzen dezuten.

INES ¿Ea-aldijua?

APAIZA Bai: joan beaŕa det: bañan, nai dezutenean deitu, ni beaŕean aŕkitzen bazerate.

INES ta IXID. Eskeŕik asko, jauna.

IXIDOŔ Banoa ni ere: bada, apaiz jaunarekin ikusi ezkero, aitak ez dit ezer esango.

APAIZA Goazen bada. Aguŕ, Ines.

INES Eskeŕik asko, jauna; ta agindu.

APAIZA Ongi jaŕaitu.

IXIDOŔ (*Maitetsu, Ines'i eskua emanez*). Aguŕ Ines.

INES Zoaz ondo.

## SEIGAŔEN AGEŔALDIA

**Ines bakaŕik: gero Joxepa.**

INES Oŕela agertzen dan mutil zintzo bateri, ¿zer esango diot ba? Baietz esan beaŕ. Egia esateko,

ez da bere diruengatik. Berak esan duana diot nik ere: lagun egoki bat nai det: ta Ixidoŕ'ek zintzo ta egoki-egokia dirudi... Aitaren bilduŕ naiz: gogoŕ egiten badigu, ni ez naiz ausaŕtuko esandako bideari jaŕaitzen... ¡Nola tajutuko ote gera!... (*Deitzen dio Joxepa'ri, atea puxka bat irikiz*). ¡Joxepa!... ¡Joxepa!...

JOXEPA (*Baŕendik*). Banua... (*Ateratzen da*). ¿Bakaŕik al-ziñan?

INES Bai: oraintxen joan dira apaiz jauna ta Ixidoŕ.

JOXEPA ¡Ixidoŕ!... Emen izan al-da?

INES Bai; emen izan da, nere idazkiaz aŕiturik bere zintzotasuna erakustera.

JOXEPA (*Leyatsu*). ¿Ta zer dio?

INES Ez bilduŕ izateko bere aitaren izakeragatik.

JOXEPA Geŕtu dago beraz zurekin ezkontzeko.

INES Bai; gaŕbi ta zintzo erakutsi du bere maitasun ta naia.

JOXEPA (*Eŕdi negaŕez)*. Banekian... banekian... ez nuan ezbairik...

INES Bañan... ¿zer da ori?... negaŕ!...

JOXEPA ... Ezin det...

INES ¿Nere ezkontzak izutzen zaitu?

JOXEPA Ez: ongi da zu eskontzea, batez ere Ixidoŕekin.

INES Neretzat ongi bada, zuretzat ere izango da.

JOXEPA Bai... bañan, ainbeste urte alkaŕekin igaro ta...

INES ¿Zer?... Nere eskontzak banatuko gaituala uste dezu?... Ez Joxepa, ez: zu nerekin izango zera, zuk nai badezu.

JOXEPA Ori da nere gogo ta naitasun guzia.

INES Ba, ez izan ezbairik oŕetzaz. Ni Ixidoŕ'ekin ezkontzen banaiz, zu nerekin izango zera: ta ez neskame, baizik lagun, aizpa bat bezela.

JOXEPA Ez; ez det oŕenbeste *merezi*.

INES Bai ta geyago ere... ¡Ez litzake beaŕ!... Zuregatik, zuri eskeŕak, ez nintzan gelditu bakaŕtasun oso-osoan; ta beaŕturik nago, nere eskuan detanean, zu ongi izateko al-detan guzia egitera.

JOXEPA Eskeŕik asko, Ines.

INES — Ez dezu eskeŕik eman beaŕik. Ta orain, gai oni utziz, gure egunerokoari jaŕaitu beaŕ diogu.

JOXEPA — Bai; zeregin askotxo degu, lan guziak bukatu beaŕ badiʼugu.

INES — Lenbizi «Eusko-janztegi» rakoak egin beaŕ dira.

JOXEPA — Ez degu izango beaŕ dan beste oyal ta eunik.

INES — Ekaŕi egin beaŕko dezu.

JOXEPA — Bai, dirua balego.

INES — ¿Ez al-dezu dirurik?

JOXEPA — ¡Nola izango degu ba, josketan irabasten deguna aŕtu oŕduko urte bete igarotzen da ta!

INES — Bai... urte bete edo...

JOXEPA — Dan bezelaxe! Biaŕ izango dira bi il̃a-bete «Jauregi-Beŕi»'ko *Kondesa*'ri soñekoa eraman niola; ta... badakizu... batean, ez dala etxean aŕkitzen, bestean, gizonak eraman diola giltza, ta... oŕela, oraindikan ordaindu gabe: ta oŕek bezela egiten digute beste batzuek ere.

INES — Ba... beŕiz eskatu beaŕko.

JOXEPA — Oraintxen joango naiz; ta egia diotzut; ez nautela utziko diru gabe. Bestela, lapuŕ egingo ditut, ta epaileari adieraziko diot.

INES — ¡Bai zera!... etzera auzaŕtuko.

JOXEPA — Ikusiko da... Banoa.

INES — Zoaz ba, ta laisteŕ itzul.

JOXEPA — Bereala. (*Joaten da kalerako atetik*).

## ZAZPIGAŔEN AGEŔALDIA

**Ines; gero Ixidoŕ ta Éŕamun.**

INES — (*Bakaŕik*). Noiz asiko ote naiz lanak egiten!... Au dala ta eztala, ezertxo ere egin gabe!... Onela jaŕaitzen badegu, ez du gauŕko egunak irabazte aundirik emango; ta... irabazi gabe, ezin jan. Asi gaitean zerbait egiten. (*Aulkian exeriz asten da oyal bat ebaki naiz josten*).

IXIDOŔ — (*Saŕturik*). Emen naiz beŕiz ere.

INES — (*Alai*). Ongi etoŕi.

IXIDOŔ — ¿Emen utzi al-det *pakete* bat?

INES — (*Begira*). Ona emen; ¿au al-da?

IXIDOŔ — Etxean saŕtzeaz batean gogoratu naiz. ¡Galdu balitzakit, ¡¡nik entzungo nituan entzutekoak!!

INES — Oŕa ba. Zaude pozik, edozeiñen eskuetara erori ez dalako.

EŔAMUN — *(Saŕtzen da oso asaŕe)*. ¿Emen aiz orain ere? (*Ixidoŕi eltzen dio besotik*). ¡Kanpora emendik! !ume txatxu ori...

IXIDOŔ — (*Apalki*). Bañan, aita!

EŔAMUN — ¡Ixo! ¡Kanpora! *(Ateratzen da Ixidoŕ)*. (*Ines'i*). ¡Zu zera eŕudun! Zuk deituko zinion!

INES — (*Apalki*). Ez, jauna; nik ez diot deitu.

EŔAMUN — ¿Ez al-dezu irakuŕi nere idazkia?

INES — Bai, jauna: irakuŕi nuen, biotz-min aundia aŕtuz.

EŔAMUN — ¡Biotz-miña!... ez dezu itxurarik. ¿Ez al-nizun esaten, pakean uzteko nere semeari?

INES — Ta nik ¿zer egin diot bada, jauna?

EŔAMUN — Zer egin diozun?... Zuk nai espadezu, nere semea ez da etxe ontan saŕtuko.

INES — Ni, jauna, ikusten dezun bezela, jostun bat naiz; ta ez det eskubiderik etxe ontan saŕtzea iñori debekatutzeko.

EŔAMUN — ¿Zer uste dezu? Nere semea ezkonduko dala badezpadako gizon baten alabarekin?

INES — (*Kementsu)*. ¿Nere aita badezpadakoa?

EŔAMUN — Dan bezela agertzen ez dan gizonak, ez du izango omen aundirik.

INES — *(Aseŕe)*. Zer-esanik badezu ere, nere auŕean ez, ta (*Aitaren antzezkiari begira*). bere auŕean gutxiago.

EŔAMUN — Egia, atzean naiz auŕean. (*Ezetsiaz)*, ¿Ori al-da zure aita? (*Antzezkiari begira*) ¡A ze!... (*Aŕiturik*).

INES — Ori da, bai, zuk beltztu dezun nere aita maitea!

EŔAMUN — (*Gogo-aldatuaz)*. Ez... ez... ori ez det nik iraindu...

INES — ¡Ori da nere aita: ta zuk nere aita maite ori gaitzetsi dezu!

EŔAMUN — ¡Ori zure aita!... ¡Zure aita ori!...

INES — Bai: ori da nere aitaren antzezkia.

EŔAMUN — (*Antzezkiari begira*). Ba... bai... bera da. ¿Egia al-da?

INES — Izango ez da ba! (*Beregain*). ¿Zeŕ geŕtatu ote zayo gizon oni?

EŔAMUN — (*Antzezkiari begira*). Ba... ez det ezbairik. Bera da... ondo gogoratzen naiz.

INES — ¿Ezagutzen zenduan, beraz?

EŔAMUN — Ezagutu... nik jakin beaŕ detana da, zure aita dan edo ez.

INES — Jauna... ¿nola esan beaŕko ote det ziñestaraz-teko?

EŔAMUN — Ongi da... zuk ez dezu uleŕtzen zeŕgatik dan.

INES — Ez da eŕez.

EŔAMUN — ¿Zure aita bizi izan al-da iñoiz Buenos-Aires'en?

INES — Bai jauna.

EŔAMUN — Bera da.

INES — Aŕituta naukazu.

EŔAMUN — Uleŕtuko dezu garaiz... Etxera noa; bañan be-reala biuŕtuko naiz. ¿Emen aŕkituko al-zaitut?

INES — Bai jauna: ementxen egoteko asmoa det.

EŔAMUN — Ongi da. Geroaŕte bada. (*Joaten da antzezkia-ri begiratuz*).

INES — Nai dezun aŕte.

## ZOŔTZIGAŔEN AGEŔALDIA

**Ines: gero Joxepa.**

INES — (*Bakaŕik*). ¿Zer du bañan gizon oŕek?... ¡Ze asmo aŕtu ote du!... ¡Bera dala ta bera dala!... Nere aitaren antzezkiak zeŕbait gogorazi dio noski. Bañan ¿zer izan liteke?... Ezin det uleŕ-tu... ¡Buenos Aires'en ezagutu ote zuen!... Beŕiz etoŕtzekotan geldiitu da...! Zer ote dakaŕ?

JOXEPA — (*Saŕturik*). Oraingoan ba-dakat.

INES — ¿Zer?

JOXEPA — Dirua ba. Kendu diot Andŕe Kontxesi'ri eman beaŕ zuena.

INES — Ez nintzan gogoratzen ere.
JOXEPA — ¡Ederki dago!... Oldozkoŕ aŕkitzen zaitut.
INES — Bai, Joxepa. Geŕtakizun guziak zu atera-ondoren izaten dira.
JOXEPA — ¿Zeŕbait al-degu orain ere?
INES — Aŕituta nago.
JOXEPA — ¿Zer dezu ba?
INES — Ixidoŕ'en aita izan da emen.
JOXEPA — ¡¡E!!
INES — Bai.
JOXEPA — ¿Ta ze asmo ekaŕi du ba?
INES — Ez dakit zer esan ere. Guztizko asaŕe etoŕi da: bañan gero... nik ez dakit zer geŕtatu zayon... Nere aitaren antzezkia Ikusteaz batean aseŕeari utzi dio... ta galdera batzuek egin ondoren, etxera joan da, beŕiz bereala etoŕtzeko ustez.
JOXEPA — ¿Bereala etoŕtzeko?
INES — Bai: onela esan dit.
JOXEPA — ¡Zer ote darabil ba!
INES — Ez dakit ze asmo izango duen.
JOXEPA — Aŕitzekoa da!... Arek, antzezkia ikusiz ezagutu egingo zuen noski zure aita; eta damutu egingo zitzayon berataz gaizki esana.
INES — ...Baliteke *(Deya atean).*
JOXEPA — Bera ote da?
INES — Auŕera.

## BEDERATZIGAŔEN AGEŔALDIA

**Ines, Joxepa ta Eŕamun: gero Apaiza ta Ixidoŕ.**

EŔAMUN — *(Aŕpegi-alaiaz).* ¡Aŕituta aŕkituko zerate noski!
INES — Egia esateko... bai jauna.
EŔAMUN — Bai, sinisten det. *(Ateratzen du sakelatik inguŕazti edo kuaderno bat: begiratzen dio; gero oŕman esegita dagon antzezkiari ta oŕela, antzezki ta kuadernoari txandaka bein edo geyagotan begiratzen die. Bitartean esan leikez,*

*antzezkiari egokitzen zaizkan itz batzuek... bizaŕduna, aŕpegi-zabala, begi uŕdiñak, edo... itz bakoitzean antzezkiari begiratuaz. Ondoren esango du beregain).* Bera da. Biak bat dira. *(Gero Ines'i).* Zuk diozunez, au, da...

INES ¡Nere aita!

EŔAMUN Ongi da: orain ez det ezbairik.

INES ¡Baña, jauna!...

JOXEPA (Ze ote da au).

EŔAMUN Bereala uleŕtuko dezu guzia. ¿Noiz etoŕi zan zure aita Buenos-Aires'tik?

INES Ba... izango dira, amabi uŕte inguru.

EŔAMUN Bai: bete-betean. Orain uleŕtzen det: zure aita neri on-egin ondoren aterako zan Buenos-Aires tik: eta oŕegatik ez nuen iñon aŕkitzen.

INES Baliteke.

EŔAMUN Bai, oŕelaxe izan beaŕ!

APAIZA *(Saŕtuz).* ¿Bada baimenik?

JOXEPA Auŕera.

APAIZA ¡Kaixo Aŕiaga'taŕ jauna! ¿Zu ere emen?

EŔAMUN Bai jauna: nere beaŕkun bat betetzera etoŕi naiz.

APAIZA Onuragaŕia bada, etzayo gaizki etoŕiko Ines'i.

EŔAMUN Bere aitaren nere aldezko on-egite bat oŕdaintzera.

APAIZA ¡Zorionak, Ines!

INES ¡.....!

EŔAMUN Ez daki oraindikan zer dan: eta nik ere ez nola... uste gabe... jaŕi naizen bide ontan. Orain jakingo dezute guzia. Ines: ¿aberatsa al-san zure aita?

INES Bai jauna: oso aberatsa, Buenos-Aires'tik etoŕi zanean: bañan, ezer utzi gabe iĺ zan.

EŔAMUN *(Iŕi-paŕez).* Beraz; ¿etzuen utzi ezertxo ere zuretzat?

INES Ez jauna.

EŔAMUN Ez da ori egia.

INES ¡Izango ez da ba, jauna!

APAIZA Ezertxo ere ez.

EŔAMUN Esan det, ez dala egia: eta orain sinestaraziko dizutet. Orain amabi-amairu urte aŕkitzen nintzan ni Buenos-Aires'en: banuen diru puxka bat;

bañan, lan gutxiago eginda geiago irabazteko ustez (alpeŕ askori geŕtatzen zaiena) jokoari eman nion; ta batean pelota-lekuan, bestean zaldi-lasteŕketan, ta azkenez jai-etxetako moskiltokietan guzia jokaturik geldiţu nintzan muŕiztuta, ezertxo gabe. Txoraturik, eroturik, nere zoritxaŕa ikusiz, ez nekian zer-egin, ta..... egingo nuen gizatxaŕkeriaren bat, betiko galduz... bañan, eskeŕak gizon maitekoŕ ta biotz-aundidun bati: Jaun oŕek, nitzaz kupiturik, esan zidan: «Zertara zoaz? ¡Gizonak ez du atzeratu beaŕ, eŕgel ta makal diranak egiten dute ori! Suspeŕtu eta eman aŕpegiya zorigaitzari: Jaŕaitu lanean bulaŕtsu» ta eman zizkidan bosteun laurleko esanez: «Onekin zerbait egiten badezu, tori».

APAIZA ¡Egipen goralgaria!

EŔAMUN Batez ere, aŕek bezela egin ezkero, bere izenik eman gabe.

APAIZA Ta ez al-zenduan ezagutzen?

EŔAMUN Ez jauna: ta galdetu nion noŕ zan, bada jakin nai nukeala noizbaitean ordaintzeko zoria izaten banuan ere; bañan alpeŕik. Bakaŕ-bakarik esan zidan: «Utzi pelota-leku ta beste jai-etxetako joko moskiľe guziei, ta jaŕaitu lanari.»

APAIZA ¡Oŕek bai bete zuela ondo aintzinako esakuna: «Egizu on, ez jakin aŕen non.»

INES (*Biotzez*). ¿Ta nere aita ote zan jaun ori?

EŔAMUN Esango dizut. Uŕengoan ezagututzeko ere, begiratu nion ondo aŕpegira; bañan, nik ez det geyago iñoiz ikusi jaun ori: Noski, alde egingo zuen andik.

INES Amabi uŕte igaro dira.

EŔAMUN Bai; ala esan dezu len. Nik ez nuan nai oŕdaindu gabe gelditzerik: Beraz, bide-onean jaŕirik, bosteun lauŕleko ayek ondatu baño len aŕkitu nintzan dirua poliki irabazteko bidean. Europako guda aseŕea asi ondoren etoŕi nintzan Amerikatik Bilbora; ez nuen entzuten beste izketarik, *nabiera*'k gora ta *nabiera*'k bera baizik; ta ausaŕtu nintzan ni ere irabazpide oyetan dirua jaŕtzera,

ta erosi nuen itxas-ontzi bat; eta Buenos-Aires'ko nere ongiĺea noizbait ageŕtzen bazan ere, jaŕi nituen bere izenean amaŕ garazki (1).

APAIZA — ¡Ori da gizonaren zintzotasun ta gizalege egiazkoa!

IXIDOŔ — (*Bilduŕez saŕtuz*)... Onera etoŕtzeko esan didate...

EŔAMUN — Bai; nik agindu diat. Atoŕ auŕera. *(Auŕeratzen da Ixidoŕ zer geŕtatzen ote dan)*. Garazki oyek asko eman dute, eta beren gora-bera guziak eŕolda-idazti baten aŕkitzen dira. Ona emen. (*Ixidoŕi galdetuaz*). ¿Ze idazki dek au?

IXIDOŔ — Ongiĺearen eŕolda (kuenta).

EŔAMUN — Beronek esango dizute zer aŕkitzen dan idazki ontan. (*Ematen dio Ixidoŕi*). ¿Zer jaŕtzen dik lenengo oŕian.

IXIDOŔ — (*Irakuŕiaz*). Nere ongiĺearen eŕolda.

EŔAMUN — Ea zenbateraño eldu dan?

IXIDOŔ — (*Azken-aldeko oŕian irakuŕiz*). Guztiz... Beŕeun ta ogei ta bost miĺa lauŕleko.

EŔAMUN — Ba.,. Ongiĺe ori... (*Ines'en aita'ren antzezkia ikuŕtzatuaz*). Jaun ori da.

INES — ¿Benetan? *(Guziak aŕiturik, batez ere Ixidor)*.

EŔAMUN — Bai; ta zu, bere alaba zeran ezkero, zureak dira diru guzi oyek.

INES — Ezin liteke jauna... ez...

IXIDOŔ — ¡Bañan... zer da au!

APAIZA — (*Ines'i*). Eŕamun jaunak esan duen bezela izan ezkero, zureak izan beaŕ.

EŔAMUN — (*Eŕolda-idaztia apaizari erakutsiz*) Oŕa or. (*Aŕtzen du apaizak idaztia eta egongo da ikuskatzen).*'

JOXEPA — Bai Ines.

IXIDOŔ — (*Aitari*). Beraz Inesen aita izan da gure ongiĺea?

EŔAMUN — Bai; ta diru oyek ez dute beste jaberik bere alaba baizik.

APAIZA — (*Idazkia Eŕamuni emanaz*). Oso edeŕki ta garbi dago. Ondo erakutsi dezu ongiĺearen ganako

(1) Acciones.

maitasuna. (*Ines'i*). Ta zorionak zuri, Ines, Jaungoikoak ordaintzen dizkitzulako on-egite guziak.

EŔAMUN (*Ines'i idazkia eskeiniz*). Tori.

INES Ez naiz ausaŕtzen.

EŔAMUN (*Puxka batean oldozkoŕ bezela egonda, Ixidoŕ'i eskeiniaz*)... Artzak bada ik.

IXIDOŔ ¡Nik!

EŔAMUN Ines'en ezkontsaritzat nai badek...

IXIDOŔ (*Pozez aŕituta*). ¡¡E!! (*Ines'ek ere ageŕtuko du bere pozezko aŕimena*).

APAIZA (*Eŕamun'i*). Edeŕki asmatu dezu.

EŔAMUN Biyok ontzat aŕtzen badute...!

IXIDOŔ (*Ines'i pozez*). ¿Zer deizkiozu, Ines?

INES Nere aldez... poz-pozik!

IXIDOŔ (*Eskua emanez*). Biotzez eskaŕtzen zaitut!

INES Eskeŕak... Jaungoikoari!

APAIZA Berak onetsi zaitzatela!

## AZKENA

*Nihil obstat*
*Dr. Petrus de Menchaca*
*Censor*